# JESUSEN BIHOTZ SAKRATUA



**Poztu zaiteze nigaz,**

**aurkitu dot-eta galdutako**

**ardia.**

# IZAN ZAITEZ BETI, JESUS MAITEA,
# GURE BIHOTZAREN JAUN TA JABEA.

**Jesusen bihotza**
**dago suturik,**
**maitasuna**
**agertzen**
**alde guztitik.**

# IZAN ZAITEZ BETI, JESUS MAITEA,
# GURE BIHOTZAREN JAUN TA JABEA.

**Non aurkituko da**
**bihotz gogorrik**
**bihotz honen**
**suan**
**urtuko ez danik.**

Aitaren eta Semearen eta Espiritu Santuaren izenean.

AMEN

...

—ETA ZURE ESPIRITUAREKIN.

ERRUKI, JAUNA.

KRISTO, ERRUKI.

ERRUKI, JAUNA.

# Aintza zeruetan Jaungoikoari

AINTZA ZURI, JAUNA,

TA ESKERRAK ZURI.



**† Jaunak esana.**

ESKERRAK ZURI, JAUNA.

# JAUNA DOT ARTZAIN, EZ NAZ EZEREN BEHARREAN.

Jauna dot artzain, ez naz
ezeren beharrean;
larre gurietan etzunarazoten
nau,
ur-bazter nasaira eroaten
eta indarrak deustaz
barritzen;
bide segurutik naroa,

# JAUNA DOT ARTZAIN,
# EZ NAZ EZEREN BEHARREAN.

Ibar baltz ilunean banabil be,
ez naz gatxaren bildur,
Zu nigaz zagoz-eta;
zure artzain-makilak nasaitzen
nau. R/.

# JAUNA DOT ARTZAIN,
# EZ NAZ EZEREN BEHARREAN.

Mahaia atontzen deustazu
arerioen begi-bistan;
orioz igurzten deustazu burua,
gainezka dot edontzia. R/.

# JAUNA DOT ARTZAIN,
# EZ NAZ EZEREN BEHARREAN.

Zoriona eta maitasuna ditut lagun,
bizitzako egun guztietan,
eta Jaunaren etxean biziko naz
amaibako egunetan. R/.

JAUNA DOT ARTZAIN,

EZ NAZ EZEREN BEHARREAN.

**ALELUIA, ALELUIA, ALELUIA.**

Neu naz artzain ona,
dino Jaunak;
ezagutzen ditut neure ardiak,
eta neureek ezagutzen nahe Ni. R/

† Jauna zuekin.
**—ETA ZURE ESPIRITUAREKIN**

† Jesu Kristoren ebanjelioa...
**AINTZA, ZURI, JAUNA.**



† Jaunak esana.
ESKERRAK ZURI, JAUNA.

**Eskatzen deutsugu, Jauna.**

**ZEUGAN DOGU USTE ONA.**

**† Bedeinkatua zu, Jauna, zeru-lurren.**

**...**

**BEDEINKATUA ZU,**
**JAUNA,**
**ORAIN ETA BETI.**

**Senideok: egin daigun otoitz**…

…

JAINKOA GORESTEKO
ETA GIZAKIA
SALBATZEKO.

**Jauna zuekin**

**ETA ZURE ESPIRITUAREKIN**

**Gora bihotzak**

**JAUNAGAN DAUKAGUZ**

**Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari**

**EGOKI DA ETA ZUZEN**

**SANTU, SANTU, SANTUA**

**DIRAN GUZTIEN JAINKO JAUNA.**

**ZERU-LURRAK BETERIK DAUKAZ**

**ZURE DISTIRAK.**

**HOSANNA, ZERU GOIENETAN!**

**BEDEINKATUA**

**JAUNAREN IZENEAN DATORRENA.**

**HOSANNA, ZERU GOIENETAN!**

**SANTU, SANTU, SANTUA**
**DIRAN GUZTIEN JAINKO JAUNA.**
**HOSANNA... ZERU GOIENETAN!**
**-ZERU-LURRAK BETERIK DAUKAZ**
**ZURE DISTIRAK.**
**HOSANNA... ZERU GOIENETAN!**
**-BEDEINKATUA**
**JAUNAREN IZENEAN DATORRENA.**
**HOSANNA... ZERU GOIENETAN!**

† Hau da sinismenaren misterioa.

HIL ETA BIZTU
ZARALA, JAUNA,
ZU BARRIZ
ETORRI ARTE
HAU DOGU HAU
BARRI ONA.

Gure Aita,

zeruetan zarana,

santu izan bedi zure izena

etor bedi zure erreinua,

egin bedi zure nahia,

zeruan bezela lurrean ere.

Emoiguzu gaur
egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak,
geuk ere geure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero,
ez eiguzu itzi
tenta*zi*noan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

ZEUREA DOZU

ERREGETZA,

ZEUREAK

OSPE TA INDARRA, ORAIN

ETA BETI.

**Jaunaren bakea beti zuekin**

**ETA ZURE ESPIRITUAREKIN**

Jaungoikoaren Bildotsa
zeuk kentzen dozu
munduko pekatua…

…ERRUKI JAUNA
…ERRUKI JAUNA
…EMOIGUZU BAKEA.

**JAUNA, NI EZ NAZ INOR**

**ZU NIRE ETXEAN**

**SARTZEKO**

**BAINA ESAIZU HITZ BAT**

**ETA OSATUKO NAZ.**

# IZAN ZAITEZ BETI, JESUS MAITEA, GURE BIHOTZAREN JAUN TA JABEA.

**Ez dau Jesus onak**
**ez atseginik**
**gu oso bereak**
**egin gaberik.**

IZAN ZAITEZ BETI, JESUS MAITEA,
GURE BIHOTZAREN JAUN TA JABEA.

**Bere bihotzean danok harturik, geratzen da Jauna pozez beterik.**

# Jauna zuekin

**ETA ZURE**

**ESPIRITUAREKIN**

**JESUS,**
**MUNDUKO ARGIA.**
**JESUS, ZINEZKO EGIA.**
**JESUS, BETIKO BIZIA.**

**Gure bihotz barruan**
**biztu zure argia,**
**gaitezan gu munduan**
**argi Jainkoz betia.**

# Zoaze Jaunaren bakean.

# ESKERRAK JAINKOAR

